# BERTSO ZARRAK

## 6 Pedro M. Otaño Amerikatik osaba Jose Bernardori bialduba

1

Milla zortzireun larogei eta
bederatziya da aurten
orra ogeita amabi urtek
nola arrapatu nauten
ni Ilbeltza'ren ogeita seyan
Errosariyo Santa Fen
nere osaba barkatu bizait
ixilik egon banaiz len.

2

Zer kontatuba pranko badaukat
ondo esango banitu
bañan guztiyak karta batian
ezin litezke kabitu
sekulan ez naiz orain aldiyan
bezin nastuba arkitu
Joxe Leoni galde bezayo
notizi danak ark ditu.

3

Ay, zer ote da goitikan bera
gizona bein amiltzia
beñere ez naiz arrua izan
bañan au da umiltzia
ez nuen uste bazeikiala
gaizkiago ibiltzia
azken aldera errematxatu
zait len nedukan iltzia.

4

Rosariotik Kordobaraño
Joxe anayarengana
joan ta izan naiz lau illabetez
bizi nayak eramana
osasuna ta esperantza zan
aruntzian neramana
oso estutik eskapatu naiz
iya galdu nuen dana.

5

Nola aparte bizitu giñan
biyok denbora luzian
ay ura gure ezin asia
elkargana bildutzian;
Joxek etzuen itzik somatzen
nik lepotik eldutzian
orduan etzan poza besterik
lengo penak galdu ziran.

6

Zegon tokira ni joan baño len
irten zitzaidan bidera
burni bideko estaziyuan
izan zan gure billera;
elkar topo an egin genduen
ua gora ta ni bera;
etzait aztuko baña nola esan
gau artako ibillera.

7

Guk ere ainbat izan gentzake
geren alderdi plakuak;
bañan senide guziyak gera
elkarrentzat alakuak;
Joxek botatzen zituben pozez
ginga añako maikuak
maite nola ez izan anayak
ua dan bezelakuak.

8

Bañan luzaro etzezakian
gau artako umoriak;
urruti zauden aita Juan Pello
eta gure senideak
beti bezela maite ditugun
aide ta adiskidiak
au pentsatzian illundu ziran
gure pozaren biriak.

9

Bakarrik ez dan señalia da
pena bat agertutzia
andikan laster sortu zitzaidan
gaitz bat txarra ta luzia
asko du jakin nai duenian
pasa detan gurutzia
Joxe Leoni bialtzeyotan
papera irakurtzia.

10

Nunbait betiko erori ez ta
noizbait jarri nitzan txutik
bañan biziro gaizki nebillen
burutik eta petxutik;
Mikelak eta Juan Marik gero
deitu zidaten etxetik;
Errosariyon sendatu naute
an sortutako gaitzetik.

11

Zizurkildikan Madrila aña
bide gutxi gora bera;
ni engañatzen ez banaiz daude
Kordobatikan onera
anayak Joxek lagundu zidan
kotxiarekin trenera
anparo billa etorri nendin
nerien aldamenera.

12

Penaz beteta pozaren billa
etorri nintzan aruntzik
nere arrebak zer esan zidan
goguan dauzkat geroztik:
Bertso ederrak ordañen truka,
osabak bidaltzen dizkik
ayen bueltak jarri biaituk
denak aitu ezbazaizkik.

13

Txit artakotzat artzen natxion
osabak bere noblezan
eta sentitzen deran guztiya
nik etzekiñat nol'esan;
bañan zedozer jarriko diñat
seguru idukiezan,
borondatia falta zaidanik
iñork sinistu ez dezan.

14

Iduritutzen zaidan batzubek
duda badabilkitela
ikusirikan nik ayei aña
kaso egiten diratela;
bañan ixilik egonagatik
ik ondo dakiñ, Mikela,
guk nai diyegun baño geyago
eziñ nai izan leikela.

15

Beron gañian izatendira
gure izketa geyenak;
iñola ez ditu maiz aipatuko
onenbeste nai diyenak!
Guretzat oraiñ aundiyak dira
orko gauza txikiyenak.
Au esaten det jakiñ dezaten
lenago etzekitenak.

16

Lenago anbat aiñtzat artzen ez
ginduzen gauza guziyak,
ainbesteraño edertzen ditu
oraiñ eziñ ikusiyak:
Euskal erriko mendi ta zelai
ibai arkaitz ta sasiyak,
beñere eziñ astu litzake
ayen tartian aziyak.

17

Gu guyenian gabiltza emen
esna ere ametsetan,
beti pentsatzen berongan eta
Euskal-erriko gauzetan
askok diyonez bizi gerade
txit toki aberatsetan;
bañan ez dago Donostiya-rik
gure lurrian bestetan.

18

Ameriketan ikusten ditut
zenbait euskaldun «andare»
bizi diranak beren lurrari
aitormenik eman gabe. ..
bañan ez dute ezagutzen, ta
oyek barkatubak daude.
Nik Donostiya eskatuko det
Paraiso-ra joanta ere.

19

Euskal-lurreko lore-baratza
Zeruko intzez bustiya
beste izar ta argi guztiyak
itzaltzeko eguzkiya;
zure berdiñik iñun ez dezun
biyotzeko Donostiya...
Nork du mingaña zu gortitzeko
merezi dezun guziya!

20

Donostiyako «Ziudadia».
Irutxulo ko uriya,
Etxian zuben perlik onena
Jainkuari ixuriya
zartzen diranen alaitzallia
gazte guztiyen nobiya;
Zeruba zer dan ezdakit bañan,
zu zera nere gloriya.

21

Urruti zaude eta zalla da
ni zugana iritxtia;
onenbeste nai dizun batentzat
zer bizimodu tristia!
Alaipide bat bakarra daukat,
ametsetan sinistia;
Zu ikusteko noiznai asko det
nere begiyak ixtia.

22

Nere osaba Joxe Bernardo
iritxi naiz ontaraño
ta ixiltzera nua, zer esan
asko badaruzkat baño.
Gure berriyak zabaldu bitza
derizkiyon lekuraño
esanaz bere illoba dala
Pedro Maria Otaño.

Imprenta Macazaga – Rentería

ezdoita-azpikoa-Lenesil